## URTEAN ZEHARREKO XXV. DOMEKEA - A

**SARRERAKO OHARKIZUNA**

Egunon, guztioi; ondo etorri!

Gure asteroko kristau batzarra ospatzeko asmoz alkartu gara. Geugaz batera, geure eguneroko bizitzea, geure kezkak eta amesak ekarri doguz, Jaungoikoaren Berbearen argitan aztertzeko. Berba horretan, gaur, dei egingo jaku Jaungoikoa bilatzera, geure bideak zuzentzera eta bere mahastian langile izatera.

Goazen gure bizitzako argia dan Jesusen bila:

*"Aita baten semeok / sinismen bakar bat dogunok/*
*anai artean batu garanok / kantuz gatoz, kantuz, zugana, Jauna."*

—Seme gara, bai, baina seme izaten ba ete dakigu?
Anai gara, bai, baina anai izaten ba ete dakigu?
Seme izatera, anai izatera, Jauna, heldu nahi dogu.

**DAMU-OTOITZA**

Senideok: Jaungoikoak deuskun maitasunari sarritan ez deutsagu maitasunez erantzun. Apaltasunez eta damututa, parkamena eskatu deiogun:

- Jesus Jauna, gizon-emakume guztiak salba**tu** nahi dituzuna. ERRU-KI, JAUNA.
- Jesus Jauna, gure hutsegiteak parkatzeko be**ti** prest zagozana. KRISTO, ERRUKI.
- Jesus Jauna, Aitaren sa**ri**a zaituguna. ERRUKI, JAUNA.

**Is 55, 6-9:**

Isaias profeteak Jaungoikoa bilatzera dei egiten deusku; gure asmoak eta bideak Harenakin bateratzera.

**Erantzun-Salmoa:** *"Erruki hutsa dogu Jauna: errukia ta maitasuna..."*

**Flp 1, 20c-24. 27a:**

San Paulok kartzelatik idazten deutse Filiposko kristinauei, bere barruko egoerea zelakoa dan agertuz. Jaunagaz aurkitzeko pozik dago; baina prest dago, baita, gelditzen jakozan indar apurrak Ebanjelioaren aldeko lanean eralgiteko ere.

**Mt 20, 1-16a:**

Sarritan, Jaungoikoa geure zerbitzura ikusi gura izango geuke. Jaungoi-koaren izatea eta jokabideak ezin geikez sartu gure neurri estuetan.
Prestau gaitezan Jaunaren berbak gogoz entzuteko, zutunik *"Aleluia"* abestuz.

**JAINKO HERRIAREN OTOITZA**

† Senideok: fedeak dinosku, Jaungoikoa gure bizitzan barru-barruraino

sartuta dagoala. Horregaitik, uste osoz agertu daikeoguz geure beharrizanak, gurariak eta eskariak:

- Munduan bizi dan Eleizearen alde, eta batez ere Bizkaiko Eleizearen alde: Jesusen Ebanjelioa geroago ta zintzoago bizi dagiala. ESKATU DEIOGUN JAUNARI.

- Gure herriaren alde: zuzentasun eta solidaritza jator baten, beti aurrera joan daiten, guztien onerako bide barriak urratuz. ESKATU DEIOGUN JAUNARI.

- Jaungoikoaren irudi gogorra eta estua dauken guztien alde: Ebanjelioko Jaungoikoa errukiorra, maitekorra eta azkenengo ordukoei ere saria emoten dakiana dala ulertu daien. ESKATU DEIOGUN JAUNARI.

- Meza santu hau ospatzen dihardugun guztion alde: gure eguneroko lanak eta ekintzak Jaungoikoagandik hartutako dohai lez hartu eta bizi daiguzan. ESKATU DEIOGUN JAUNARI.

† Aita errukiorra, onartu eizuz gure eskariak; eta gure beharrizanak ezagutzen dozuzan ezkero, emoiguzu zeure Espirituaren indarra. Jesukristo gure Jaunaren bitartez. Amen.

## Jaunartzerako

Hemen gaituzu, Jauna, ogiaren eske:
bizi behar honetan ahuldu baikintezke.
Zure gorputz santua hartu nahi genduke.
Zu gabe bizitzerik ezingo genduke.

Munduak behar badau eguzki-argia,
mendiko abereak iturri garbia,
orobat nahi badogu barruko bizia,
beharrezkoa jaku zeruko ogia.

Jauna, zure grazia lagun dakigula
ogi hau jan dagigun behar dan bezela.
Ez ahaztu txarrerako jarriak gauzela,
arren, zuzen ta leial bizi gaitezela.

## Oharrak